**Axelko eta Otsoko Bertsotan**

Xabier Ugarte Billar - Testua

Kepa Etxeberria Sagarzazu - Marrazkiak

A LAMA 2008

**atara**miñe

**www.literaturakoadernoak.org**



ISBN: 978-84-947954-0-4

Lege gordailua. Depósito legal. Dépot légal: SS-1287-2017

Oroipenak ximel ez daitezen
espetxeko patioan
ipuin hauxe kontatzera gatoz
hartzazun ondo gogoan.
Haur ttikia; lokartu zaitezen
barre batekin ahoan
marrazkiok ikusi ta entzun
zeuk gura dozun doinuan

Behinola, bazen baso polit bat
Aloña mendi ondoan
bertako abere ta txoriak...
hantxe algara goxoan.
Baina Axelko eta Otsoko
beti ziren xexioan
nahiz-ta Astokillo bihozbera
saiatu bake giroan.

Liskar guztia pizten zuena
Otsoko zen gehienetan.
Ehiztari trebea izan arren,
beti geratzen zen lotan.
Orkatzen mendia urrun samar
zegoen arren, benetan
alferkeria maite zuenez,
hasia zen lapurretan.

Axelko eta bere lagunak
begi bat beti, zelatan
gure Otsoko hurbilduz gero...
guztiak antxintxiketan.
Ulu maltzurra eta irria
otsoak zeukan hortzetan
bere muturra agudo sartuz
besteen otorduetan.

-“Nora zoaz, Otsoko
horren txistulari?”
Galde zion Axelkok
apur bat urduri
beldurra baitzioten
otso harroari.
Gose izanez gero...
koska edonori.

-“Neu naizelako, hemen
Jauna ta Jabea!
Oraindik ez dakizu
lelo nazkantea?
Harrapatzen bazaitut...
janari merkea!”
Harroputza da gero,
gure aberea.

Gure Axelko ttikia ere
ez zen txintxo-txintxoena
bihurrikeriak egin guran
zebilen egun gehiena.
Behin egin zuen trauskilkeria...
hura baitzen handiena;
sorgin zaharrari ikasitako
itsasgarri hurarena.

Gorostiaren azalak bilduz:
eltzean egosi dena,
izerdi-salda loditu arte
irakin behar zuena.
Gero, kola birinez nahastuz...
jarleku gain ta barrena
bazter denak itsaskorrez blaituz...
hura zen, bai, hondamena!

Txori gajoak adasketatik
hankak ezin libraturik
Otsoko artaburua berriz,
aulkitik aska ezinik.
Baina, orduan gertatu zenak
ez zeukan grazi izpirik
ta Astokillo onbera, ere
Axelkokin sumindurik
serioski zigortu baitzuen
lau igandez; jolas barik.

Ohiko zuten bezala;
elkar izorratzen
Otsoko ez zenean
Axelko bera zen.
Bizi-giro exkaxa
ari zen gailentzen
eta basoko denak
hasiak aspertzen.

Astokillo zintzoa
sosegua galtzen,
pazientzia ere
zihoan amaitzen
baso hartan, inondik
bakerik ez baitzen
eta elkarbizitza
erabat pattaltzen.

Gautxori xamarra zen, Axelko
ta pittin bat mesfidati;
han-hemenka; non zer ikusiko
zertxobaiten bila beti
xomorro-xomorro ibiltzen zen
ixilik eta bakarti.
Azeria ez da etxekoia,
izatez baita basati
kate-txakurra izan baino lehen...
ibiliko da goseti.

-"Ari naizela, ari naizela,
zorte ederra, benetan!
hiru libra inguruko gazta
putzu barruko uretan.
Polea horren katean jaitsiz...
afaria eskuetan,
inor ez dut konbidatuko ta...
lanik ez dut banaketan,
neuk bakarrik jango dut guztia
ixilka ta ilunetan"

-"Buruargia nintzelakoan,
ez ote naiz mozolotu?
Ilargiaren isla uretan,
gazta zela dut pentsatu.
Norbaitek ateratzen ez banau...
KITTO! ezin naiz salbatu"
Putzu barneko ur hotz-hotzetan
Axelko zaigu larritu.
Berak bakarrik jan nahi zuen ta
hauxe baitzaio gertatu.
Baina, trantze hontan ikusita...
nola ez ba errukitu?

-“Gabon, Axelko, babu lerdoa,
zertan zabiltza hor behean?”
Halaxe esan zion Otsokok
goitik, burlati antzean.
Baita... Axelkok, azkar erantzun
pentsamentu maltzurrean:
-“Ikusten duzu alboko gazta?
Utzi dut jan ezinean
bukatu nahiko bazenu-edo...
lagako dut hor gainean.”

-"Pozik jango nuke, alajaiña!
horraxe joaten baneki,
ez dizut hozkarik egingo ta;
nola jaisten da, zehazki?"
-"Ondo erraza daukazu hori:
heldu katea irmoki
berehala jaitsiko zara eta
bertan afaldu ederki"

-"Azeria eta gazta ere...
GRAUST! jango ditut, deblauki"
Burutazio gaizto horrekin
eskegitzen da maltzurki.
Baina, Axelkok argi jokatuz
behetik katea atxiki;
kontrapisua Otsokok sortuz...
Axelko goruntz, arinki.

-"Begira nola aurkitzen zaren
otso tontolapikoa!
Putzuan gaztarik ez dago ta
erraz zen, asmatzekoa
ikastolara joan ez zinenez...
jakintzarik gabekoa;
inoiz ez baitzenuen ikasi
polearen funtzioa.
Orain...ezin hozkarik egin ta
hartuko dut mendekua
goitik lasai egingo dizkizut
txizarrakada mordoa"

Hantxe zebiltzan, elkar iraintzen
nahiz-ta, Otsoko; otzanki.
Hor agertzen zaie Astokillo
maitekor eta apalki:
-"Aii...Axelko, bihozgabe hori,
ez zara ari zuzenki!
Hurkoaren atsekabeataz
nola jardun hain ankerki?
Ez al zera ba, zu zeu ere egon
putzuan, larri ta gaizki?
Ondo legoke, elkartasunez,
laguntza eman, umilki"

Astokilloren hitz haiek, nonbait...
izan zuten eraginik;
elkarri barkamena eskatuz,
ez zen gehiago liskarrik.
Aurrerantzean baso haretan
bazen lasai ibiltzerik
abere denak bazuten eta
alaitzeko motiborik
zeren orain ez baita ikusten
elkartasuna besterik.

Gertatu zen bezala
dago ipuinean,
agertzen ez den arren
liburu artean,
geuri kontatu zigun
berba xamurrean:
soinujole itsuak
haurrak ginenean.

Hortxe dirau basoak
gure ametsetan
nahi lukeenak ostatu
beraren barnean.
Gura bada hobetuz
bertso zuzenean
baina, baso-kutsua
hartuz bihotzean.

Zerbait geratu bada
ahaztu antzean;
geure adiskideak
umore onean
pozik kontako dizu
bertso ederrean;
Angelek baitakizki
Oñati aldean.

Egileak:



Testua:
**XABIER UGARTE BILLAR**
Centro de cumplimiento
Topas
Ctra. N-630, km 314
37.799
Topas, Salamanca



Marrazkiak:
**KEPA ETXEBARRIA SAGARZAZU**
C.P. Zuera (Zaragoza)
Ctra. N-330, km 539
50.298
Zuera, Zaragoza

